## ESAMOLDEAK

1. Baten bati arazoak konpontzea:

   **a.** Ez dut nik patata beroa jango!
   **b.** **Ez dizkizut babak ertzetik aterako!**
   **c.** Ez dizut zezena kortan sartuko!
   **d.** Ez dut euria nire etxean sartuko!

2. Tranpan erortzea:

   **a.** Ziriari hozka egin dio lelo hark.
   **b.** Amuari hozka egin dio lelo hark.
   **c.** **Amuari heldu dio lelo hark.**
   **d.** Bete-betean erori da, alajaina!

3. Zerbait egiteko beta izatea:

   **a.** Nonbaitetik atera behar duzu hori egiteko denbora.
   **b.** Nolabait aurkitu beharko duzu hori egiteko denbora.
   **c.** Hori egiteko denbora bilatu beharko duzu.
   **d.** **Nolabait hartu beharko duzu hori egiteko astia.**

4. Norbaiten bizarrak zirriak egitea:

   **a.** **Kepa, ea bizarra kentzen duzun, zulatu egiten du eta.**
   **b.** Kepa, ea bizarra mozten duzun, zirikatzen du eta.
   **c.** Kepa, ea bizarra kentzen duzun, zorrozten du eta.
   **d.** Kepa, ea bizarra ebakitzen duzun, mintxoa egiten du eta.

5. Bonbilla “funditu”:

   **a.** **Bonbilla aldatu behar dugu, erre egin da eta.**
   **b.** Bonbilla aldatu behar dugu, galdu egin da eta.
   **c.** Bonbilla aldatu behar dugu, ez dabil eta.
   **d.** Bonbilla aldatu behar dugu, apurtu egin da eta.

6. Zerbait egiteko beharrik eza:

   **a.** Nik ez daukat hori egiteko beharrik!
   **b.** Nik ez daukat hori zergatik egin!
   **c.** **Nik ez daukat hori zertan eginik!**
   **d.** Nik ez daukat hori egitearen zergatia!

7. Ederki hitz egiteko gaitasuna izatea:

   **a.** **Hori bai jario ederra!**
   **b.** Hori bai zalua!
   **c.** Berba-lapiko ederra zurea!
   **d.** Elea zara gero!

8. Osasuntsu eta “gazte” ibiltzea:

   **a.** **Zaharra da, bai, baina sasoian dago oraindik.**
   **b.** Itxuroso dabil gure mutila!
   **c.** Saioan dabil gure pilotaria.
   **d.** Sasoi itxurosokoa da gure mutila!

9. Zalantzarik gabe erabaki beharra:

   **a.** Behingoz erabakiko ahal duzu!
   **b.** Ozta-ozta erabaki behar duzu.
   **c.** Beldurrik gabe hautatu behar duzu.
   **d.** **Zirt edo zart egin behar duzu.**

10. Harridura adierazteko:

   **a.** Ozta-ozta apurtu duzu burua!
   **b.** Burua apurtu ahal izan duzu!
   **c.** **Burua apurtu ez duzunean!**
   **d.** Ia-ia apurtu duzu burua!

11. ragana gora-behera, elkarren arteko lankidetza sendotzea adostu zuten bi aldeek. Beste era batera:

   a) Iraganak bultzaturik, elkarlanari hasiera ematea adostu zuten bi aldeek.
   b) **Iragana alde batera utziz, elkarlana indartzea erabaki zuten bi aldeek.**
   c) Iraganeko kontuak alboratuz, bakoitzak bere lanari heltzea hitzartu zuten bi aldeek.
   d) Iragana kontuan izanik, elkarri lanak ematea hobetsi zuten bi aldeek.

12. Aitona, zu gaztetan soldadutzara joan al zinen? Aukeratu erantzun egokia.

   a) Bai horrenbestez!
   b) Bai, baina indarrera!
   c) Jakina, behar-beharrean!
   d) **Beharko joan!**

13. Zertan datza arazoaren muina? Bestela esanda:

   a) Non dago atarramendua?
   b) Zein da gakoaren koxka?
   c) Zein da koxkaren gakoa?
   d) **Zein da arazoaren funtsa?**

14. Hau tripazorria! Zer esan nahi du?

   a) **Gose galanta.**

b) Ikaragarrizko tripako mina.
c) Barrez lehertzeko gogoa.
d) Betekada itzela.

15. Zer diostazu? Ez dutela ondo elkar hartu? Aukeratu erantzun egokia.

a) **Ez ba, tirabirak izan dituzte.**
b) Ez. Elkar banandu dira.
c) Ez dute, ez, elkar barkatu.
d) Ez, ez dira ondo eraman.

16. Josune entzute handiko emakumea da. Hau da:

a) **Oso ezaguna da.**
b) Entzumen onekoa da.
c) Iritzi desberdineko jendeari entzuten dakiena da.
d) Besteren arazoak ulertzeko gai da.

17. Jaialdiaren antolamendua gure gain utzi dute. Hau da:

a) **Geuk antolatu behar dugu dena.**
b) Egin dezakeguna baino gehiago da.
c) Gu aparte geldituko gara.
d) Gure gainetik daudenek egin beharko dute.

18. Orain ere lortu du horrek berea. Erantzun edo jarraipen egokia:

a) **Horrek bai jakin!**
b) Horrek baietz jakin!
c) Horrek bai jakiten duela!
d) Horrek benetan dakiela!

19. Ikusten al duzu zenbat jende ari den hurbiltzen? Erantzun egokia.

a) Bai, hau jendearen etorkizuna!
b) Bai, hau jendearen hurbilketa!
c) **Bai, hau jendearen emana!**
d) Bai, hau jendearen sarrera!

20. Arreba Gabonetan ikusteko irrikan zaude, ezta?

a) Bai horixe, etortzeko.
b) Bai, etortzea!
c) **Bai, etorriko ahal da!**
d) Etor dadin.

21. *Gureak eta bi esan zizkiguten*. Beste era batera esanda:

a) Azal-azalekoak esan zizkiguten.
b) Behin betikoak aditu genizkien.
c) **Errieta galanta egin ziguten.**
d) Adarra jo ziguten galanto!

22. Norbaiten esanak harridura edo asaldura sortzen duela adierazteko:

a) Begira hori esatea!
b) **Hori esatea ere!**
c) Hori esan egin ere!
d) Hori esan ere!

23. Zein esalditan dago utikan hitza ondo erabilita?

a) Mesedez, etorriko al zinateke nigana, utikan!
b) **Ez zaituztet gehiago ikusi nahi! Utikan!**
c) Etor zaitezte nigana segituan, utikan!
d) Jarraitu eserita zaudeten tokietan, utikan!

24. *Hau euri zaparrada!* Jarraipen egokia:

a) Bai, pitxarkadaka ari du!
b) Bai, mara-mara ari du!
c) Bai, ezari-ezarian ari du!
d) **Bai, gogotik ari du!**

25. *Sagarrak ostu eta oraingoan alde egin didazue, baina hurrengoan ordainduko duzue,...* Aukeratu jarraipen egokia.

a) garesti, gainera!
b) Jainkoarren!
c) beranduago edo goizago!
d) **ederki ordainduko duzuenez!**

26. Hauxe da arlote horren filosofia: *ni ondo bizi eta besteak...*

a) auskalo!
b) kili-kolo!
c) **hor konpon!**
d) salda bero!

27. *Azeria oilategian sartu eta...* Zein da jarraipen egokia?

a) Bereak eta bi entzun zituen.
b) Bereak eta bi esan zituen.
c) **Berak eta bi egin zituen.**
d) Bereak eta besteenak egin zituen.

28. *Gure alabak gaua ............. pasatu du*. Zein egokia?

a) **negar batean**
b) malko batean
c) negar batez
d) malko batez

29. Irakasleak ikasle saiatuari ea azterketarako ikasi duen galdetu dio, zer ez dio erantzungo?

a) Ikasiko ez nuen, ba!
b) Beharko ikasi!

c) Bai, ikasi barik!
d) **Noski baietz ikasi dudala!**

30. Ezezagun bat aurkeztu berri dizutenean, zein da egokiena?

a) **Urte askotarako!**
b) Eutsi goiari!
c) Luzatu bostekoa!
d) Kaixo, motel!

*31. ...Hamabiak dira, itzali telebista eta segi ohera!* Agindu honentzat hasierarik egokiena:

a) **Zer partidu eta zer partidu ondo!**
b) Zer kontzertu demonio!
c) Hara zer kontzertua!
d) Zer partidu eta zer istorio!

32. Zer edo zer handia irabazi duen adiskideari, zer esango zenioke?

a) Irabaztea ere!
b) Zer irabazi eta irabazi ondo!
c) **Bejondeizula.**
d) Ederra egin duk, gero!

33. Hurrengo onomatopeietatik bat oker dago. Zein da?

a) **Tiroa jo zuen: bang!**
b) Atea kask-kask jo zuen.
c) Hor dabiltza txipli-txapla uretan.
d) Plaust!, jausi zen lurrera.

34. Zein ez da egokia?

a) Egurra txikitu dute.
b) Bizarra moztu du.
c) Soka eten da.
d) **Harremanak ebaki dituzte.**

*35. Afari-legea egin dugu.* Zer esan nahi du?

a) Legezko afaria egin dugula.
b) Afariak egiteko araua jarri dugula.
c) **Afaria-edo egin dugula.**
d) Sekulako afaria egin dugula.

*36. Hobe beharrez esan dizut.* Zer esan nahi du azpimarratutakoak?

a)Hobeto egin dezazun
b) **Mesedegarri gerta dakizun**
c) Asmo txarrez
d) Nazka-nazka eginda

37. Alexek azterketa guztiak gainditu ditu.

a) **Bejondeiola!**
b) Bai horixe!
c) Ez horregatik!
d) Hau zoritxarra!

*38. Han ere txakurrak hanka-hutsik.* Zer esan nahi du?

a) Ezinbestez txakurrek hanka-hutsik joan behar dute; nori bere, alegia.
b) Txakurrak gu baino okerrago bizi direla, eta ez kexatzeko.
**c) Inora joanda ere, arazo berberekin topo egiten dugu.**
d) Txakurrak arazo baino ez dira.

39. Txoriburuaren plantak egiten ditu maiz.

a) Txoriburuak maiz egiten ditu
b) **Txoriburuarena egiten du maiz**
c) Txoriburuak gustuko ditu
d) Txoriburuaren arrastoen bila dabil

*40. Zer moduz ibili zarete Parisen? -Hainbestean!*

a) Primeran ibili dira.
b) **Erdipurdi ibili dira, ez ongi eta ez gaizki.**
c) Hainbeste jende dago Parisen, ezen ez itzultzeko asmoarekin etorri baitira.
d) Kalez kale asko ibili dira

41. Bertsolariak etorri handiko pertsonak izan ohi dira.

a) Joan-etorri ugari egiten dituzte.
b) **Hitz egiteko trebetasun handikoak dira**.
c) Bertsolariak handiustekoak dira.
d) Bertsolariei bertsoak handik eta hemendik etortzen zaizkie.

*42. Hortxe zegok koska!*

a) Hara non datorren!
b) **Horixe da arazoaren muina!**
c) Eureka!
d) Hau mina hartu dudana zorioneko koska honekin!

*43. Aizu, Mikel! Pilotan arituko gara?*

a) Irabazten zaitudala!
b) Ea irabazten nauzula!
c) **Ezetz irabazi!**
d) Ez didazula irabazten!

44. Zerbaiten edo norbaiten jokaera aldakorra dela adierazteko:

a) Bistatik urrun, bihotzetik urrun.
b) Astoa joan eta mandoa etorri.
c) Goiz gorri, arrats euri.
d) **Batean kale, bestean bale.**

*45. Asmo onekin, patxadaz, hurbildu nintzaion,...*

a) neure onetik aterata.
b) **on beharrez.**
c) ahotan hartu gabe.
d) ahoa bete haginekin.

46. *Nik hori egingo dudala uste baduzu,...*

a) argi daukazu!
b) garbi daukazu!
c) argi daramazu!
d) **jai daukazu!**

47. *Nahikoa jan al duzue?* Erantzuna:.

a) **Bai, ederki berdindu gara!**
b) Bai, tripazorriak jarri zaizkigu!
c) Bai, hesteetaraino gaude!
d) Bai, urdaila akiturik dugu!

48. *Ea, ba, goazen bazkaltzera,...*

a) tripak jaten nago eta!
b) tripaz gora nago eta!
c) ahoa bete hortzez nago eta!
d) **goseak amorratzen nago eta!**

49. *Erraz irabaziko genuela uste nuen, baina galdu egin genuen.* Erantzuna:

a) Urrutiko intxaurrak hamalau, gerturatu eta lau!
b) Zuhurraren poltsak bi zulo!
c) **Usteak erdia ustel!**
d) Zenbat eta gehiago espero izan, orduan eta gutxiago lortu!

50. Hondamendiaren aurrean:

a) Honek amaierara jo du!
b) **Nireak egin du!**
c) Honek amaiera ukitu du!
d) Amaitzear gaude!

51. *Ez, gero, ohera joan ahoa ongi garbitu gabe!* Erantzuna:

a) Pentsatu ere!
b) Ez pentsatu!
c) Ez halamoduz!
d) **Pentsatzea ere!**

52. Zein da zuzena?

a) Hitzetik hortzera erori egiten da.
b) Hitzetik hortzera ikusten dut mutil hori.
C) Hitzetik hortzera jaten ari da.
d) **Hitzetik hortzera esaten du gezurra.**

53. *Museoan izan zara ala?*

a) **Zer museo eta zer museo ondo?**
b) Museotan, bai!
c) Museoak niri?
d) Zein museo eta zer zortziko?

54. *Lan lasterra, lan alferra.*

a) **Azkar eta ondo, usoak hegan.**
b) Alferra beti lanez itoa.
c) Geroa, alferraren leloa.
d) Nagia beti lantsu.

55. Norbait berandu ailegatu da:

a) Garai onean ailegatu haiz!
b) **Une ederretan ailegatu haiz!**
c) Ordu onetan ailegatu haiz!
d) Momentu onetan ailegatu haiz.

56. Ez zaitez itzulinguruekin ibili, eta...

a) **zoaz harira!**
b) zoaz alera!
c) erraietara joan zaitez!
d) hondora joan zaitez!

57. *Gaixoak bere azken egunetan pena eman zien arren, gero badakizu...*

a) "hil ondoren amen".
b) "hilak zulora".
c) "heriotzea lagun".
d) **"hilda gero, salda bero".**

58. *Txinan hegodun suge bat aurkitu dutela?...*

a) Noski ezetz!
b) Begira nondik!
c) **Baita zera ere!**
d) Ezta hurrik eman ere!

59. *Ez naute berriro hor harrapatuko,...*

a) **ez horixe!**
b) ez horrexegatik!
c) ez horrenbestez!
d) ez halatan!

60. *Nik joan beharra daukat. Gero arte!* Erantzuna:

a) Ederki, ba. Ikusten gara!
b) **Ederki, ba. Egongo gara!**
c) Ederki, ba. On dagizula!
d) Ederki, ba. Ikusiko gara!

61. *Ez dizut esango nola egin behar duzun.* Erantzuna:

a) Ez horregatik!
b) Ezta zertan ere!
c) **Ezta beharrik ere!**
d) Bai, egon horretan!

62. *Ez al zara gogoratzen?* erantzuna:

a) Gogoratu ez, ba!
b) Bai naiz gogoratzen!
c) Gogoratzen ez naizera!
d) **Gogoratuko ez naiz, ba!**

63. Zerbait egitea, ondorioei erreparatu gabe:

a) Itsuaren itsu.
b) Itsuarena eginez.
c) **Itsu-itsuan.**
d) Itsuen pare.

64. *Nirekin adiskidetu nahi ez baduzu, ... zuretzat.*

a) zenbat eta okerrago
b) **hainbat okerrago**
c) harik eta okerrago
d) zenbat okerrago

65. Norbait modu onez eta losintxaz ari zaizunean:

a) Ez niri adarrik jo.
b) Zoaz antzarrak ferratzera.
c) Intxaurrak urrunetik hamalau, bertaratu eta lau.
d) **Ez hasi nirekin zurikeriatan.**

66. *Isil-isilik egon da,...*

a) ez du txiorik esan!
b) ez du zintzik esan!
c) ez du miaurik atera!
d) **ez du txintik atera!**

67. *... eta bapo geratu gara!*

a) **Otordu ederra egin dugu**
b) Ikuskizun ederra ikusi dugu
c) Gure taldeak irabazi du
d) Dirua amaitu zaigu

68. *Gaizki esanak ... , ondo esanak...*

a) **barkatu / kontuan hartu.**
b) ahaztu / kontuan hartu.
c) barkatu / gogoratu.
d) ahaztu / gogoratu.

69. Inori gauza bat gertu edo eskueran duela adierazteko:

a) **Esku-eskuan daukazu.**
b) Eskurik esku dabilkizu.
c) Eskubidean duzu.
d) Eskutan duzu.

70. Eguraldi zatarra, oso desatsegina:

a) **Eguraldi txakurra.**
b) Eguraldi xelebrea.
c) Ahazteko moduko eguraldia.
d) Eguraldi motela.

71. *Konturatu gabe, ... jantzi dut jertsea.*

a) gainekoz azpi
b) **atzekoz aurrera**
c) kanpoz barru
d) goikoz behera

72. Gertaera batek harritu egin zaitu:

a) Horra hor!
b) Horixe kontua!
c) **Hau marka, hau!**
d) Hara bestea!

73. *Usoak joan, sareak heda.*

a) Dagoenean bon-bon, ez dagoenean egon.
b) **Alferrik da ura joan eta gero presa egitea.**
c) Kalean uso, etxean otso.
d) Haizea nora, zapiak hara.

74. *Emango diozu zor diozuna?* Erantzuna:

a) Beharrik!
b) **Beharko eman!**
c) Beharretan nago!
d) Baita eman ere!

75. *Ez al zara etorriko?* Erantzuna:

a) Etorri barik!
b) Datorrela, bada!
c) Ezta zipitzik ere!
d) **Horra joan? Baita zera ere...!**

76. *Egingo didazu mesede hori?* Erantzuna:

a) **Egingo ez dizut, ba!**
b) Bejondeizula!
c) Alajaina!
d) Ez horregatik.

77. *Ba al dakizu zerbait Italiako literaturari buruz?* Zein dago gaizki?

a) Ezta arrastorik ere.
b) **Ezta bat bera ere.**
c) Ezta ideiarik ere.
d) Tutik ere ez.

78. Zein da zuzena?

a) Sabelak bor-bor egiten dizu.
b) Hor zihoan, ttipi-ttapa bere autoarekin.
c) **Atea kask-kask jo nuen.**
d) Bihotzak di-da egiten dit.

79. *Ez diogu horri inolako probetxurik aterako.* Bestela esanda:

a) Ez dizkiogu babak eltzetik aterako.
b) **Ez diogu atarramenturik aterako.**

c) Ez diogu txintik aterako.
d) Ez dugu bere onetik aterako.

80. Zein da zuzena?

a) **Gatozen harira!**
b) Gatoz harira!
c) Goaz harira!
d) Gauden harira!

81. *Urte askotarako!* Noiz erantzungo dugu honela?

a) Norbait hiltzen denean.
b) **Norbait aurkezten digutenean.**
c) Opari bat ematen digutenean.
d} Zorionak ematen dizkigutenean.

*82. Arrazoia duzu, esan dizudana ez da egia.* Erantzuna:

a) Esanak esan!
b) Lezakeena!
c) **Banengoen, ba!**
d) Aukeran ez!

82. *Egindako promesa ez zuen bete.* Bestela esanda:

a) **Bere hitza jan zuen.**
b) Bere hartan gelditu zen.
c) Hitzerdika hitz egin zuen.
d) Hizpidea eman zuen.

*83. Aurpegi txarra jarri zion auzokoari.* Bestela esanda:

a) Ezinikusia hartu zion.
b) Begiz jan zuen.
c) Begizkoa egin zion.
d) **Bekozko iluna jarri zion.**

84. *Doluminak!* Noiz esaten da hori?

a) Norbaiti gorrotoa diozunean.
b) **Norbait hil denean, familiakoei.**
C) Norbaiti inbidia diozunean.
d) Norbaiti eskumuinak ematean.

85. *Istripu hartan besoa apurtu nuen.* Erantzuna:

a) Jainkoari esker!
b) Jainkoa lagun.
c) Burua apurtu beharrik ez!
d) **Burua apurtu ez zenuenean!**

86. Zeinetan dago ondo "estu eta larri"?

a) Estu eta larri iritsi da trena.
b) Estu eta larri geratzen zaizu gona hori.
c) Estu eta larri heldu behar diozu palankari.
d) **Estu eta larri dago zorrak direla eta.**

87. Zeinek adierazten du ahulezia?

a) **Makal dabil aspaldi honetan.**
b) Hondoa jo du gizajo horrek.
c) Ez da bere buruaren jabe.
d) Behea jota dago koitadu hori.

88. *Nolako zura,...* Nola bukatzen da?

a) ...halako hazkura.
c) ...halako zuhaitza.
b) ...halako ezpata.
d) **...halako ezpala.**

89. *Zure ama ez dut aspaldian ikusi; eman...!*

a) ...oroitzapenak
b) ...musuak
c) ...besarkadak
d) **...eskumuinak**

90. Apaizak dio: "*Gaur lurperatzen ari garen laguna ez zen gizon txarra, ...*"

a) **...goian bego!**
b) ...egon bedi lasai!
c) ...bejondeiola!
d) ...eutsi goiari!

91. Trena ... beteta zetorren.

a) ...pikutaraino...
b) **...leporaino...**
c) ...sudurretaraino...
d) ...bekainetaraino...

92. "*Itzal handiko gizona*". Zer esan nahi du?

a) Gizon erraldoia, sendoa eta garaia.
b) Gauzak azpikeriaz eta zurikeriaz lortu zalea.
c) Bere moduko asko dituena, berdin-berdinak.
d) **Errespetua ematen duena.**

93. Esaldi horietatik zein da egokiena?

a) **Dirua barra-barra egin dute horiek.**
b) Azterketa gori-gori dago.
c) Euria mara-mara ari du.
d) Puri-purian dator autobusa, bizkorregi.

94. *Benetan sinestu al dizu hori?* Erantzun:

a) Hasi eta buka, sinestuta ere!
b) Begi truk sinestu ere!
c) **Itsu-itsuan sinestu ere!**
d) Hitzetik hortzera sinestu ere!

95. Ez zenuen, ba, nire erlojua ikusiko? Haserre erantzuteko:

a) **Zer erloju eta zer erloju-ondo!**
b) Zer erloju eta demontre!

c) Zer gero erloju!
d) Zer erloju eta zer erloju!

96... *esan diot, baina gaizki hartu dit.*

a) **Hobe beharrez...**
b) Bere onean...
c) Bere onagatik...
d) Beharonez...

97. Joni kaskamotz deitzen diote. Zergatik?

a) Ilea motz-motza duelako.
b) Kaskagogorra delako.
c) Oso kaskarina delako.
d) **Oso azkarra ez delako.**

98. *Bata bestearen aurka aritu dira egun osoan, liskarrean.* Bestela esanda:

a) Elkarri losintxaka jardundute.
b) Elkarri zirrika jardun dute.
c) Elkarri lausenguka jardun dute.
d) **Elkarri mokoka jardun dute.**

99. ..., *inork nahi ez badu, neuk egingo dut!*

a) **Zer arraio...**
b) Zer atarramentu...
c) Zer ganoragabe...
d) Zer deabruak...

100. "*Hitza jatea*": Zer esan nahi du?

a) Mutu gelditzea.
b) **Agindutakoa ez betetzea.**
c) Esandakoaz damutzea.
d) Ondo ahoskatu gabe berba egitea.

101. ... , *XXI. mendearen atarian horrela ibili behar izatea!*

a) Bai marka dela...
b) Hau da marka hau...
c) **Marka da, gero...**
d) Hau da, gero, marka...

102. *Gaur atzo baino gusturago ibili gara, ezta?* Adostasuna adierazteko:

a) **Bai, alde ederra.**
b) Jakina ezetz!
c) Jakina, hala moduz.
d) Beno, kili-kolo.

103. *Egun on!* Erantzun DESEGOKIA:

a) Halan ekarri !
b) Berdin!
c) **Urte askotan!**
d) Baita zeuri ere!

104. *Eta orduan hegazkinaren atea ireki egin zen, benetan, gu barruan ginela...!*

a) Ez iezadazu ilea hartu.
b) **Ez niri adarrik jo, gero!**
c) Hori gezur bat da.
d) Nolako gezur handia esan didazula!

105. Gorputza oso nekaturik, zer esaten da?

a) **Leher eginda nago.**
b) Lehertuta nago.
c) Neke asko daukat.
d) Lur jota nago.

106. *Horrek ez daki piperrik ere!* Nola adierazi zure ezadostasuna?

a) **Ez. jakin barik!**
b) Ezta pentsatu ere!
c) Ez noski.
d) Bai daklela!

107. Lagun batek harira ez datorren jaialdi baten kontua aipatu dizu. Zer esango?

a) Zein jaialdi madarikatu?
b) Zein jaialdi, txotxolo?
c) **Zer jaialdi eta zer jaialdi-ondo?**
d) Baita zera ere!

108. *Asmatuko ote dugu?* Erantzuna:

a) Nor jakin lezake ?
b) **Batek daki!**
c) Bai zaila dela!
d) Noski baietz!

109. Poza adieraziz, animatzeko eta adorea emateko zer erabiltzen da?

a) Zer egingo diogu, ba!
b) Gureak egin du!
c) Hau bai ederra!
d) **Hori duk eta!**

110. *Konorterik gabe jausi ez zenean!*

a) Lurrera seko erori zen.
b) **Jaustekotan egon zen.**
c) Bertan erori zen.
d) Laguntza gabe egoteagatik, jausi egin zen.

111. *Dagoenean bon-bon eta ez dagoenean...*

a) **...egon.**
b) ...hor konpon.
c) ...ez jaramon.
d) ...erosi.

112. *Azkarra zara, gero!*

a) Azkarra zara orain eta gero ere bai.
b) Izatez azkarra zara, baina...

c) **Benetan zara azkarra.**
d) Ez zara oso azkarra.

113. *Zu ez zara hori egiteko gauza.* Erantzuna:

a) Bai naizela!
b) Bai zera!
c) Ez, hori bai ezetz!
d) **Izango ez naiz, ba!**

114. *Horrek lehengo lepotik du burua.*

a) Badaki zer egiten duen.
b) Zentzu handikoa da.
c) **Ez da batere aldatu.**
d) Ez zaio ezer larririk gertatu.

115. *Ederki berdinduta altxatu ginen mahaitik.* Zer esan nahi du:

a) Denbora ugari eman ondoren altxatu ginela.
b) **Ongi jan eta edanda altxatu ginela.**
c) Bazkariarekin konforme altxatu ginela.
d) Ederki ordaindu eta gero altxatu ginela.

116. *Zertan zaude hor etzanda?*

a) Hementxe, egoten.
b) Lasaitasunean nago hementxe.
c) **Hemen, egonean.**
d) Hori, ba!

117. Aurtengoan ere ... egin behar izan ditugu lanak bukatzeko.

a) handi-mandiak
b) **geureak eta bi**
c) geureak
d) sesio izugarriak

118. *Ederra kontzertua, e?*

a) Baietz, ba!
b) Ederki, ba!
c) **Bai, horixe!**
d) Bai izan dela!

119. *Beno, banoa, ea hurrengo batean ere...*

a) **...elkar ikusten dugun !**
b) ...topatzen garen!
c) ...badugun denbora gehiago!
d) ...ikusten garen!

120. *Ezinean zabiltzala? Bada, niri...*

a) ...zer arraio!
b) **...bost axola!**
c) ...axolik ez!
d) ...bost axola zaizkit!

121. *Zazpi eta hut irabazi omen du Athletic-ek!*

a) **Ez da izango!**
b) Irabaztea ere!
c) Hala bedi!
d) Sinesgarria!

122. *Egingo zenidake mesede bat?*

a) **Egingo ez dizut, ba!**
b) Zer arraio, moldatuko zara.
c) Bai, egiten dizut.
d) Noski baietz!

123. *Gauzak dauden bezala ez da hona agertuko; gu, behintzat,...*

a) **...ezetzean gaude.**
b) ...ezezkoan gaude.
c) ...ezetz esango genuke.
d) ...ezetz ustean gaude.

124. Norbait oso nekaturik ikusten duzunean, zer diozu?

a) **Leher eginda dago.**
b) Lur jota dago.
c) Bereak egin du.
d) Lehertuta dago.

125. *Gehienez ere, hogei urte edo izango ditu.*

a) **Oso goitik jota, hogei bat urte izango ditu.**
b) Goia jota, hogei bat urte izango ditu.
c) Gehiena jota, hogei bat urte izango ditu.
d) Goien jota, hogei bat urte izango ditu.

126. *Aitaren batean esnatu da.* Hau da:

a) Aitarekin batera esnatu da.
b) Aitarenean esnatu da.
c) **Berehala esnatu da.**
d) Larri nahiz ikaraz esnatu da.

127. *Irakasleari ez natzaio gehiegi gustatu eta, beraz, honela adieraziko dut:*

a) Begi txarrekin hartu nau irakasleak.
b) **Begitan hartu nau irakasleak.**
c) Begietan hartu nau irakasleak.
d) Begikoa nau irakasleak.

128. *Berekiko esan du.* Aukeratu baliokidea:

a) Berez esan du.
b) Beragatik esan du.
c) Berari buruz esan du.
d) **Bere artean esan du.**

129. *Uholdeak eraman zion artaldea. Bera ez zen ito, ordea.*

a) Eskerrak horri.
b) **Gaitz erdi!**

c) Zein abagunea!
d) Bejondeiola, behintzat!

130. *Ogi gogorrari hagin zorrotza.*

a) **Gogoz ekin behar zaiela lan zailei.**
b) Alferrak zail aurkitzen duela edozein lan.
c) Lan gogorrei kontu handiz ekin behar zaiela.
d) Ogi gogorra jatekotan nolanahiko haginek ez dutela balio.

131. *Okerreko begitik sartu zitzaion.*

a) Une txarrean harrapatu zuen.
b) Triste antzean zegoen.
c) **Ez zitzaion batere gustatu.**
d) Haserre bizian jarri zen.

132 *Mekanikaria haserretuta joan zen, nire autoa...*

a) hor konpon utzita.
b) kitto.
c) **bertan behera utzita.**
d) harri eta zur utzita.

133. Zerbait askotan esan duzula adierazteko:

a) Hogei bider esan dizut!
b) Ehun bider esana dizut!
c) Zazpi bider esan dizut!
d) **Hamaika bider esan dizut!**

134. Andoniren etxera telefonoz deitzean:

a) Andoni dago?
b) Andoni dago ala ez?
c) Andoni ez al dago?
d) **Andoni hor al da?**

135. *Hor dago koska.*

a) Hara non datorren!
b) **Hori da arazoaren muina.**
c) Aurkitu dut soluzioa.
d) Hortik datoz gaitz guztiak.

136. Negu gorrian kalera zoaz eta alkandora besterik ez duzu jantzi; zer esan dizu amak?

a) Alkandorarekin bakarrik joango zara?
b) **Alkandora hutsik joango zara?**
c) Alkandora bakarrik eroango duzu?
d) Alkandora horrekin joaten zara soilik?

137. *Ezetz jakin nondik natorren!*

a) **Baietz igarri!**
b) Noski dakigula!
c) Hanka azpitik ere igarriko nuke hori!
d) Hori eginda dago!

138. Ipuina amaitzeko: *Hala bazan ala ez bazan,...*

a) **...sar dadila kalabazan, eta...**
b) ...ez zen gezurra izan, eta...
c) ...halaxe izango zan, eta...
d) ...sar dadila plazan, eta...

139. Nola bukatzen da aurreko esaera?

a) **...atera dadila herriko plazan.**
b) ...irten dadila herriko karrikan.
c) ...jalgi dadila plazara.
d) ...atera dadila etxeko ganbaran.

140. *Zer berri?*

a) Ondo esan beharko.
b) **Zaharrak berri!**
c) Ondo eta zu?
d) Auskalo!

141. *Athletic-ek irabazi behar eta azkenean...*

a) **zakurraren putza.**
b) ahuntzaren gauerdiko eztula.
c) zaharrak berri.
d) dagoenean bonbon, ez dagoenean egon.

142. *Ezin dut gehiago, ... ikasteaz.*

a) bizkarreraino nago
b) **kokoteraino nago**
c) sudurretaraino nago
d) nazka-nazka nago

143. Partiduan etxekoek jokaldi ona egitean:

a) **Hori duk eta!**
b) Horiek komeriak!
c) Horrelakorik!
d) Hori ere!

144. *Hobe beharrean eman zion dirua.*

a) Gogorik gabe eman zion.
b) Era egokian eman zion.
d) **Mesede egiteko asmotan eman zion.**
d) Hobea izan zedin eman zion.

145. *Ez dugu irtenbiderik, ...*

a) **gureak egin du!**
b) nazkatuta gaude!
c) kaka zaharra egin dugu.
d) alpertutak gaude!

146. *Nork berea, ...*

a) da juzkuena.
b) nik esana.
c) eta norberari berea.
d) **Jaungoikoaren legea.**

147. *Haizeak nora, zapiak hara!*, nori esan?

a) Egunero arropak eskegitzen dituenari.
b) Abiadura handia hartzen duen pertsonari.
c) Egoera ezberdinei kasurik egiten ez dienari.
d) **Bere onerako egoera ezberdinetara moldatzen den pertsonari.**

148. *Igeltseroak ez zuen besterik egin, sukaldeko lana...*

a) harri eta zur utzi eta gero.
b) **bertan behera utzi baitzuen.**
c) hor konpon lagata.
d) harrituta utzita.

149. Alkandora besterik jantzita ez duenari:

a) Alkandora barik joango zara kalera?
b) **Zer ari zara alkandora hutsik?**
c) Zer ari zara alkandora soilik?
d) Alkandorarekin bakarrik joango zara?

150. Jonen etxera telefonoz deitzean:

a) **Jon hor al da?**
b) Jon hortik dabil?
c) Jon al dago hor?
d) Jon dago?

151. *Hil eta gero...*

a) ...etxean bero.
b) **...salda bero .**
c) ...hauts ugari.
d) ...difuntuak nagusi.

152. Zer esango zenioke kirolariari ondo ari denean?

a) Halakorik!
b) **Hori dun eta!**
c) Hala edo nola!
d) Hori ere bai!

153. Lagunak ez du asmatu; adorea emateko:

a) Hori dun eta!
b) Segi horrela!
c) **Eutsi, hurrengoan hobeto egingo dun eta!**
d) Hori dun azkarra izatea.

154. *Gabon, Mikel! Zer berri?* Erantzuna:

a) 0ndo, eta zu?
b) Zeu ere bai.
c) Batek daki!
d) **Zaharrak berri.**

155. *Bilbo da Euskal Herriko hiririk politena.* Ezadostasuna:

a) Jakina ezetz.
b) Nolakoa ez, bada?
c) **Bai, zera!**
d) Noski baietz!

156. *Mikelek begitan hartu du Jon.*

a) Mikeli asko gustatzen zaiola Jon.
b) **Mikelek ez duela gogoko Jon.**
c) Mikelek oso ondo zaintzen duela Jon.
d) Mikelek begirune handia diola Joni.

157. Huskeria dela adierazteko esaten da:

a) ez du txakur txikirik.
b.)ez du ez hanka ez buru.
c) **hori euli kaka da!**
d) zakurraren putza.

158. *Etorriko al zara jaialdira?*

a) Noski baietz!
b) Noski joango naizela!
c) Jakina baietz!
d) **Joango ez naiz, bada!**

159. *Harri eta zur geratu nintzen.*

a) Harria eta zura etxean gelditu nintzen.
b) Kolpe baten ondorioz mina hartu nuen.
c) Ikaratuta geratu nintzen.
d) **Aho bete hortz geratu nintzen.**

160. *Arratsalde on!* Erantzuna:

a) **Baita zeuri ere!**
b) Arranopola!
c) Gauza berdina zuri!
d) hori bai.

161. *Eguzki galdatan igo genuen mendi hura.*

a) **Eguzkiak oso gogor jotzen zuela igo genuen.**
b) Eguzkia ezkutatzen ari zela igo genuen.
c) Izerditan geundela igo genuen.
d) Eguzkia desagertuta igo genuen.

162. *Aldez aurretik esan zigun.*

a) Bera aurretik eta gu atzetik joateko esan zigun.
b) Gu lehenago joateko esan zigun.
c) **Gertatu baino lehen ohartarazi zigun.**
d) Esan baino lehen gertatu zen.

163. *Bere onenak emanda dago traste hori.*

a) Traste hori oso ona dela.
b) **Zahartuta dagoela.**
c) Izorratuta dagoela.
d) Traste hori baino hoberik ez dagoela.

164. Kirolariari animoak emateko?

a) On egin!
b) Arranopola!
c) **Eutsi!**
d) Huts egin!

165. Harridura adierazteko:

a) Urte askotarako!
b) Bejondeiola!
c) **Halakorik!**
d) Hor, nonbait!

166. Data jakiteko, zer galdetuko zenuke?

a) Zer da gaur?
b) Zer nolako eguna da gaurkoa?
c) **Zenbat ditu hilak gaur?**
d) Zein eguna dugu gaurkoa?

167. *Nola edo hala dirua lortu behar duzu*.

a) Erraza zaizu dirua lortzea.
b) **Modu batez edo beste batez dirua lortu behar duzu.**
c) Han eta hemen dirua lortzen duzu.
d) Ez duzu inoiz dirurik izan.

168. *Azkarregi edan dut eta...*

a) ...egarriak nago.
b) ...ase naiz.
c) ...eta trabatu zait eztarrian.
d) **...kontrako eztarritik joan zait.**

169. Oso nekatuta zaudela adierazteko?

a) **Hau bai porru eginda egotea!**
b) Ez dut ez gatzik ez berakatzik!
c) Lehortuta nago erabat!
d) Ez dut ez hanka ez buru!

170. *Mila esker*. Erantzuna:

a) Ezta pentsatu ere.
b) Ezergatik.
c) Ez da ezergatik.
d) **Ez horregatik.**

171. *Tartak ez zuen luzaz iraun, ...*

a) **...aitaren batean jan baitzuten.**
b) ...lasterketan jan baitzuten.
c) ...astiro jan zuten eta.
d) ...otoitz egiten jan baitzuten.

172. *Hala-holako afaria eman ziguten:*

a) Oso-oso txarra.
b) Dexentea.
c) **Eskasa.**
d) Guk beraiei emandakoa bezalakoxea.

173. Telefonoz galdetzeko:

a) Miren dago?
b) **hor al da Miren?**
c) Miren hortik al dabil?
d) Hor Mirenik ba al dago?

174. *Zer moduz amona?*

a) Gutxi gorabehera.
b) Hola edo hala.
c) **Hainbestean.**
d) Tiratzen.

175. *Jakinaren gainean jarriko duzu?*

a) Noski baietz!
b) Bai, nere bizkarrean.
c) Bai, igoko diot.
d) **Bai, nire kontu.**

176. *Nola ikusi duzu hiltzear dagoen gaisoa?*

a) Hezurtsu dago.
b) **Hezurra eta azala besterik ez da.**
c) Azal gehiago du hezurrak baino.
d) Ez du ezer.

177. *Joan zaitez harira!* Zer esan nahi du?

a) Joan zaitez pikutara!
b) Oso urrutira joan behar duzula.
c) Hariari heldu eta abiatzeko.
d) **Heltzeko gaiari eta ez galtzeko beste kontu batzuetan.**

178. Gauza bat bukatu gabe uzten denean?

a) Dagoen-dagoenean utzi.
b) **Bertan behera utzi.**
c) Ozta-ozta bukatua utzi.
d) Porrot eginda utzi.

179. *Ez ahaztu esan dizudana!* Beraz:

a) Gogotik hartu.
b) Gogoz izan .
c) Gogozko izan.
d) **Gogoan hartu.**

180. Mendian lore bat ikusi eta zera esan diozu ondokoari:

a) **Hartu usaina loreari!**
b) Usain ezazu lorea!
c) Usaindu, usaindu!
d) Nola usaintzen duen!

181. Laguna hitzordura oso berandu iritsi da:

a) A zer ordutan etorri zaren !
b) Zenbat kostatu zaizun etortzea!
c) **Garai ederrean etorri zara!**
d) Usoak joan sareak heda!

182. Txarrik opa nahi diozu nornaiti:

a) Itotzen bazara hobe!
b) Nahi nuke itoko bazara!
c) **Itoko ahal zara!**
d) Itotzen zara!

183. Zein ez da baliokidea?

a) Hitz eta pitz aritu.
b) **Hitzetik hortzera aritu.**
c) Berriketan jardun.
d) Kontu kontari jardun.

184. *Geroa, alferraren leloa*

a) Etorkizunean ez da nagirik izango.
b) Geroa, bukatzen ez den soka.
c) Lana gerora uztea leloarena egitea da.
d) **Alferrak gerorako utzi ohi du lana.**

185. *Sardina bat lan, sardina bat jan.*

a) Mixeria gorria gutxi lan egitetik dator .
b) Arrantzaleen lana gogorra eta latza da.
c) **Egindako lanaren arabera taxutzen da saria.**
d) Bizimodua ateratzeko ez dago lan txikirik.

186. *Ezin izan dut lorik egin*. Baliokidea:

a) **Ezin izan dut begirik bildu.**
b) Ezin izan naiz begiak itsatsi.
c) Ezin izan ditut begiak itsatsi.
d) Ezin izan dut lokartu.

187. *Ezin izango duzu harri hori jaso.*

a) Baietz jasotzen dudala!
b) Noski baietz!
c) **Jasoko ez dut, bada!**
d) Ziur jasotzen dudan!

188. *Ez dago beharra bezalako morroirik.*

a) Beharrak morroi izatea sortzen du.
b) Zerbait ondo egitekotan, norberak egin behar du.
c) **Premia bezalako akuilurik ez dago zerbait egin behar denean.**
d) Morroiak ez du bezainbeste lanik egin.

189. *Habia egin deneko txoria hil*

a) Lan lasterra, lan alferra.
b) **Usoak pasa, sareak heda.**
d) Baneuka eta balitz elkarren ondoan dabiltz.
e) Jaioak hiltzea zor.

190. *Lepo afaldu genuen.*

a) Oilasko lepoak izan genituen afaltzeko.
b) **Bapo egin genuen afarian.**
c) Beste baten bizkar afaldu genuen.
d) Gutxi afaldu genuen.

191. *Ziztu bizian zihoan eta udaltzaina harrapatu ez duenean!*

a) Udaltzaina ozta-ozta harrapatu du.
b) Udaltzaina ea ea harrapatu du.
c) Abiadura handian zihoan eta udaltzainak isuna jarri dio.
d) **Ia harrapatu egin du udaltzaina.**

192. Sasi hutsa ...

a) **...ez da zutik egoten.**
b) ...arantza hutsa.
c) ...gezurrezko hutsa.
d) ...txakurraren putza.

193. *Itsusi oro ...*

a) **...ederzale.**
b) ...itsusi beti.
c) ...ederregia.
d) ...itsusi zale.

194. Lagunak lotsa handirik gabe jokatu du:

a) Zer nolako aurpegi daukazu!
b) **Txo, hik duk bekokia!**
c) Moko fina zara, gero!
d) Muturra zapaltzen diozu zeure buruari!

195. *Bere etxeko laratzak ezagutuko du hori!*

a) Guztiek ezagutzen dute pertsona hori.
b) Plazako gizona da.
c) Oso pertsona ixila eta misteriotsua da.
d) **Neuk, behintzat, ez dut ezagutzen.**

196. *Etxe guztietan laratza beltz.*

a) **Han ere txakurrak oinutsik.**
b) Kupela nolako, ardoa halako.
c) Eguzkia nora eta zapiak hara.
d) Eder edo itsusi, zein begik ikusi.

197. *Arrai dago gaur.*

a) Semearen emaztea dago.
b) **Pozik dago.**
c) Eguraldi ona dugu gaur.
d) Eguraldi kaxkarra dugu.

198. *A zer kalapita sortu zuten!*

a) **A zer iskanbila...!**
b) A zer txantxa...!
c) A zer mozkorra...!
d) A zer zorra...!

199. *Nolako enborra, halako...*

a) ...adarra.
b) **...ezpala.**
c) ...kabia.
d) ...aizkora.

200. *Zer moduz zaude?*

a) Hala edo nola.
b) Hola eta hala.
c) **Hainbestean.**
d) Honenbestez.

201. Ustekerietan ibiltzeak ez dauka probetxurik:

a) Izenetik izanera gogoa zubi.
b) Asko balio du indarrak, gehiago buru azkarrak.
c) Maite duenari apoa izar.
d) **Balizko errotak irinik ez.**

202. *Baleki gazteak, baleza zaharrak.*

a) **Gazteak zaharraren jakituria falta du eta honek gaztearen indarra.**
b) Zaharrak gazteei irakatsi behar die.
c) Zaharrak beti gazte agertu nahi du.
d) Oraingi gazteak laster zahar izango dira.

203. Zein da lauretan iraingarriena?

a) Hori esatea ere!
b) Zaudete, mutilok!
c) **Alu halako hori!**
d) Emango ez dizut, ba!

204. <u>Lekutan dago</u> gure lasaitasuna!

a) Laster eskuratuko dugu.
b) Nonbait dago, oraindik argi ikusten ez badugu ere.
c) Leku askotan dago.
d) **Eskuragaitza da guretzat.**

205. *0n-on zelakoan geunden, baina azkenean azak eman zizkigun denoi*

a) **Iruzur egin zigun.**
b) Harriturik utzi gintuen, aho bete hortzekin.
c) Denoi jaten eman zigun.
d) Eskatu baino gutxiago eman zigun jaten.

206. *Anek eta Marisak elkar ondo hartzen dute.*

a) Biak berdin berdinak dira.
b) **Ondo moldatzen dira bata bestearekin.**
c) Batak bestea lepoan hartzen du.
d) Eroapenik ez dute falta, gero!

207. *Han ere txakurrak ortozik ibiliko dira!*

a) **Toki guztietan antzekoa izango da.**
b) Hura ere leku pobrea izango da.
c) Han denak lotsagabeak dira.
d) Leku hori ganorabakoz josita dago.

208. *Hori ez da ahuntzaren gauerdiko eztula!*

a) Leku hori oso isila omen da.
b) **Hori ez da garrantzirik gabekoa.**
c) Hori ez da dirudien bezain ona.
d) Ospitaleen inguruan jarri ohi duten txartela.

209. *Horrek badu nortara eman: bai, aitaren ... da.*

a) **peto-petoa**
b) iltzatua
c) irudia biribila
d) irudi utza

210. *Partiduan peto gelditu dira.*

a) Partiduan ez dute gehiegi korritu.
b) Ez dira partidu osoan mugitu.
c) Harrituta gelditu dira partiduan.
d) **Partiduan hainbana gelditu dira.**

211. *Nolako bekoskoa jarri zigun berandu heldu ginenean!*

a) Umore oneko aurpegia jarri zigun.
b) **Haserre-aurpegia jarri zigun.**
c) Bereak eta asto beltzarenak esan zizkigun.
d) Ezikusiarena egin zuen.

212. *Horrek lo zorrak ditu.*

a) Lo-zorroan dago, erabat lo.
b) Ameskaitzak ditu lo egiten duenean.
c) **Ez du behar beste lo egin eta logura da.**
d) Begi bat zabalik duela lo egiten du horrek.

213. Zer esan behar zaie erleei etxekoa hiltzen denean?

a) Erletxoak, egizue hegan: nagusia hil da.
b) Erletxoak, egizue eztia: nagusia hil da.
c) Erletxoak, egizue burrunba: nagusia hil da.
d) **Erletxoak, egizue argizaria: nagusia hil da.**

214. Zer da ESKER BELTZEKO pertsona bat?

a) Pertsona zikina.
b) Gezurra dioen pertsona.
c) **Egiten zaizkion mesedeen ordainez eskerrik agertzen ez duena.**
d) Kanpotik bestela dirudien arren, sakonean gaiztoa dena.

214. *Berehala eman zien zain txarrak.*

a) Sutan jarri ziren.
b) Odoleko gaixotasun bat pairatu zuten.

c) Berehala nekatu ziren Itxaroteaz.
d) **Behingoan hartu zuten susmo txarra.**

215. *Neska horrek begia bete zidan.*

a) **Biziki gustatu zitzaidan.**
b) Amorrua hartu nion.
c) Ez zitzaidan gehiegi gustatu.
d) Haserre bizian jarri ninduen.

216. *Lur jota dago mutil hori.*

A) Hilda dago.
B) **Etsita dago erabat.**
C) Leher eginda dago.
D) Nekatuta dago.

217. *Hizlaria etorri handikoa zen.*

a) **Hitz jario handia zuela.**
b) Arineketan heldu zela.
c) Entzute handikoa zela.
d) Urrundik zetorrela.

*217. "Egun on!"* Erantzuna:

a) Zuri berdina!
b) **Halan ekarri!**
c) Urte askotarako!
d) Baita zuk ere.

218. *Ganbara pipiak jota du horrek.*

a) Horren ganbaran txoriak sartu dira.
b) Kontu zaharrak ditu buruan
c) **Zoratuta dago.**
d) Petsona arraroa da.

219. Abenduaren 25ean:

a) **Eguberri on!**
b) Urteberri on!
c) Zorionak!
d) Gabon zoriontsuak!

220. *Zeu zara taldeko jokalaririk onena.* Ez zaude ados:

a) Bejondeizula!
b) **Baita zera ere!**
c) Alajainkoa!
d) Hara bestea!

221. Ibaik azterketa guztiak gainditu ditu:

a) **Bejondeiola!**
b) Bai horixe!
c) Ez horregatik!
d) Hau zoritxarra!

222. *Txoriburuaren plantak egiten ditu maiz.*

a) Txoriburuak maiz egiten ditu.
b) **Txoriburuarena egiten du maiz.**
c) Txoriburuak gustuko ditu.
d) Txoriburuaren arrastoen bila dabil.

223. *Ez dugu ikusi zaharra.*

a) Zaharra ikusi gabe geratu da.
b) **Duela gutxi ikusi dugu.**
c) Zaharrok gutxi ikusten dugu.
d) Zahartu arte ez dugu ikusiko.

224. *Hortxe zegok koska!*

a) Hara non datorren!
b) **Horixe da arazoaren muina!**
c) Eureka!
d) Hau mina hartu dudana zorioneko koska honekin!

225. Aizu, Mikel! Partxisean arituko gara?

a) Irabazten zaitudala!
b) Ea irabazten nauzula!
c) **Ezetz irabazi!**
d) Ez didazula irabazten!

226. *Zer moduz?* Erantzuna:

a) Tiratzen.
b) Gutxi gorabehera.
c) **Hainbestean.**
d) Hala-nola.

227. *Berritsua da hori, gero!* Erantzuna:

a) Bai, ez da isiktzerik.
b) Bai, laster batean isilduko da.
c) **Bai, ez da berehala isilduko.**
d) Bai, ez dauka isiltze onik.

228. *Ea egurra eman dion? Hara, ...* Jarraipena:

a) ...jotzen eta jotzen!
b) ...buruz behera!
c) **...jo eta txikitu arte!**
d) ...zingi-zanga!

229. *Aukera paregabea zen! ...* Jarraipena:

a) Hura ganora, hura!
b) Hura marranta, hura!
c) **Hura mauka, hura!**
d) Hura ajea, hura!

230. *Txostena biharko bidaliko dudan? Jarraipena:*

a) Lan sonbera!
b) Lanez gain!
c) **Nahikoa lan!**
d) lanpean nago!